# BERSO BERRIAC

## *Virgiña Aranzazucoaren Coroacioan*

## PELLO, ERROTARIAC JARRIAC.

**CANTASTEA.**

*Erregu eguin zazu*
*Ama gugatican,*
*Irten gueran medioz*
*Bada zugatican;*
*Cuadrilla aundia gatoz*
*Asteasutican,*
*Virgiña orri agur bat*
*Eguitea gatican.*

1

Aloña mendian dago
Virgiña bat arantzan,
Cer bait esan nai nuque
Orren alabantzan;
Lagunduco dirala
Nago esperantzan,
Beragatic asi naiz.
Orren confianzan.

2

Lagunduco dirala
Nic daucadan poza,
Artu dedan medioz
Orren esperantza;
Bestela nerez ez naiz
Ecertaco gauza,
Amparatu nazazu
Santa milagrosa.

3

Aloña mendian ori
Arantzan jarri zan,
Ez da presentatuba
Utsaren pesquizan;
Arc ondo ceraquien
Guc premia izan,
Guri lagundutzeco
Cerutic jetsi zan.

4

Ejemplo au nai nuque
Ondo eracustea,
Aundia da gugatic
Cerutic jestea;
Poz aundia beagu
Ori icustea,
Orrec ez du mereci
Bacarric uztea.

5

Coroacio bat degu
Aranzazu mendian,
Ure icustea gatoz
Chit gogo aundian;
Arzai on bat artuta
Gueren compañian,
Virgiña adoratzeco
Bear dan neurrian.

6

Promesa cumplitzera
Gatoz borondatez,
Ondo deseatuta
Aspaldico partez;
Acordatcen guerala
Gueren Ama batez,
Bete gaitzatzu cere
Doay ta virtutez.

7

Zure seme ta alabac
Gatoz zuregana,
Cergatican ceraden
Gure danon Ama;
Ez da misterio ere
Ama baten gana,
Ez da gaizqui irtengo
Ara joaten dana.

8

Ama au ez det icusi
Oraindic beñere,
Amparoric ez badet
Ez da oraiñ ere;
Lagunduco digula
Pensatzen det treve,
Animatu gaitecen
Juango guerade.

9

Norbaitec esango du
Birage lucea da,
Virgiñac errespuesta
Ondo otza cera;
Ez badezu etorri nai
Ni visitatzera,
¿Ceñec lagunduco dizu
Beartzen bacera?

10

Ejemplo on bat noa
Ni eracustera,
Zuec ere sayatu
Berriz icastera;
Poz aundian goacen
Ama au icustera,
Ori lagun degula
Galduco ez guera.

11

Baliatuco zaigu
Oraingo obra onac,
Oso maite gaitugu
Euscaldunen Amac;
Apuntatuco ditu
Gure pausa danac,
Cerbait eguin lezaque
Poz ori daucanac.

12

Ama au icusitzeco
Gaude obligacioz,
Aleguiña eguiyogun
Danoc oracioz;
Presentatu gaitecen
Ara devocioz,
Baliatuco guera
Gu ango funcioz.

13

Agur eguin deyogun
Guc ara joatean,
Burua macurtuta
Humil da paquean;
Baliatuco zaigu
Egunen batean,
Berac sartuco gaitu
Ceruco atean.

14

Ara emen versoac
Oraingo berriyac,
Ama Virgiñarentzat
Consolagarriyac;
Bidean cantatubaz
Joateco jarriyac,
Asteasun bici dan
Pello errotariyac.

*Tolosa: Imp. de E. López.*